# Kanta konsideragarriak

MILLA ZORTZIREUN TA OGEITA AMABOST GARREN URTEAN

## Pastor Izuetak, jarriak.

I

Kanta bat paratutzen
Orain biet asi,
Iñork gogorik badu
Dezala ikasi.
Mundu onetan zembait
Ote gera bizi.
Kristauaren izenik
Ezdegunoñ merezi,
Jaungoikua gandikan
Gabiltza igesi.

II

Jaungoikua bakarrik
Da gure jabia,
Zeruaren ta lurraren
Ere kriadoria
Au munduaren itxu eta
Juizio gabia
Oin pean erabilli
Jaunaren legia
Naiago degu serbitu
Etzai traidoria.

III

Konsidera dezagun
Gustiok gogotik
Zembat padezitu zuan
Jesusek gugatik
Gure animen billa
Jetxizan zerutik
Gu libratziagatik
Etzaien mendetik
Etzeguan libratzerik
Beste aldetatik.

IV

Zerutikan lurrera
Gugatik jetxi zan
Etzayak gu betiko
Beretu ezgintzan
Ogeita amairu urtian
Emen ibilli zan
Trabajurikan asko
Pasarik bizitzan
Azkenian gugatik
Gurutzian iltzan.

V

Jesusen gurutzeko
Eriotza gogorra,
Ekarri biardegu
Sarritan gogora,
Munduban ibilli zan
Arteko denbora,
Pasatu zuan gure
Animen ondora,
Aazkenian gugatik
Emanik odola.

VI

Zenbat ote guerade
Kristauen artian,
Loturic gaduz kanak
Etzayak katian,
Deskuidatzen baguera
Guerentzat kaltian.
Lenbailen libratzera
Saiatu gaitian,
Egon nai ezpadegu
Judas-en oin pean.

VII

Aserreturic dago
Jesus guregana,
Ecusiric bere contra
Gu beti guerana.
Bitarteco pararik
Orri bere ama,
Barkaciua eskatzera
Guazen beragana,
Guztioñ eguin dezagun
Konfesio on bana.

VIII

Konfesatu biagu
Ondo prestaturik,
Berriro konciencia
Esamiñaturik,
Jauna ofendituba
Firme damturik,
Propositu sendo bat
Aurrera arturik,
Gueyago ez eguiteko
Berriz pekaturik.

IX

Naiz dirala guchi ta
Naiz dirala asko,
Konfesatu ditzagun
Pekatubak oso,
Dudakurik arkitzen
Basako akaso,
Konfesore jaunari
Ondo adierazo,
Lotzas edo bestela
Ez utzi gueroco.

X

Aditu izan det nik
Esan oi dutela,
Konfesioan askok
Esaten onela,
Deabruak pekatu
Eraguin diela,
Eguia esateko
Ori ezda orrela,
Nork berak nai izanda
Beti eguiten da.

XI

Etsaia gu tentatzen
Beti dabillena,
Ezdago dudarican
Gauza jakiña da,
Ori sayatu arren
Bere eguiñala,
Kristaurik flakuenak
Berak nai duela,
Erraz bentzi dezake gu
Etsai infernala.

XII

Ez degu zer izutu
Etsaiaren guerraz,
Bentzitu dezaque gu
Nai badegu erraz,
Ori saiatu arren
Bere iguiñalaz,
Baliatzen baguera
Gueuk dauskagun armaz
Defendituko guera
Egun eta gabaz.

XIII

Edozeñek dauzcagu
Arma seguruak,
Etsaiak bentzitzeko
Emanik zeruak,
Semia biraldurik
Aita Eternuak,
Betiko para cizten
Etsaiai prenuak,
Arrez Kerostik daude
Indarrak kenduak.

XIV

Esdauka deabrubak
Kasikon indarrik,
Bañan es du guretzat
Ascoren biarrik,
Beste etsairik gabe
Mundu au bacarrik,
Gu galtzeco bastante
Dala deritzat nik,
Zergatican daguan
Fa[illegible]iaz beterik.

XV

Saiatu nai badegu
Zerua irabazten,
Ez digu iñori ere
Ezere eragozten,
Maisubak ari zaizku
Beti erakusten,
Zeruraco bidia
Nundican dan zuzen,
Baña mundubak gaitu
Gueienok ichutzen.

XVI

Munduco ichumenak
Denbora guchiko,
Uste esdegunian
Ditugu utzico,
Zertaco du mundu au
Batek irabaziko,
Galdutzen baldin badu
Anima betiko,
Ez du iñork zeruba
Dirus erosico.

XVII

Guztiz laburrak dira
Emengo contentubak
Kaburikan gabiak
Gueroko tormentubak,
Denbora dan artian
Atera contubak,
Erremedia ditzagun
Gueren pecatubak,
Ezdu ezer balioko
Guero damutubak.

XVIII

Zeñek bere anima
Emen erregistra
Mantxarik dadukanik
Baldin baderitza
Logratu naiduenak
Gerorako ditxa
Obra onak aurrera
Orain bial bitza
Emen egin zeruko
Atiaren giltza.

XIX

Konsidera dezagun
Zer peligrotan gauden
Bizi modu berri bat
Ardezagun arren
Egin penitencia
Guztiok lenbailen
Erremedia ditzagun
Geren kulpak emen
Gloria gozatzeko
Zeruetan. Amen.